# Haizea eta lizar magikoa

Bazen behin ogro maltzur bat, zekena bezain itsusia.
Herrialde osoko jaun eta jabe zen eta biztanle guztiak kikilduta zituen, halaxe bizi ziren ere Haizea eta bere lagunak, egoera goibel hartan.

Harroputzen artean harroputz, urtero bezalaxe herritarrak zirikatu zituen ogroak honakoa esanaz:

- "Nire borondate ona ikus dezazuen herrialdetik alde egingo dut eta berriro aske izango zarete, bi gauzok egiteko gai bazarete: Hasteko, inguruko zuhaiztiei txistu eginarazi behar diezue. Bestetik, herrialdeko mendi garaienak zenbat saskikada lur dauzkan asmatu"- Hau esan, eta bere ahotzar zikina zabal-zabal eginda algara bota zuen. Eskaera horiek ezinezkoak zirela ongi zekien ogroak.

Haizea txikia zen arren, bere guraso eta herrikideen etsipen eta tristuraz jabetzen zen. Guztiek zekiten eskaera horiek ezin izango zituztela inoiz bete.

Sekulako eta betiko ogro maltzurraren menpe biziko zirela esan eta burumakur afaldu zuten etxean.

Biharamunean, Haizea eta bere laguntxoak ibai ondoko zelaian bildu ziren, makinatxo bat jolasen lekuko zen zelai eder hartan.
Baina egun hartan ez zuten ez futbolean ez gorde-ketan ez bestelako jolasetan aritzeko gogorik.
Ogro gaizto hark herrialdeari biziarazten zion egoerak giroa goibeldu zuen.

-"Eta, ogroaren baldintza tranpati horiek gainditzeko zerbait asmatuko bagenu?"- Esan zuen Haizeak.
-" Bai horixe!! Zerbait egin beharko genuke"- Esan zuten denek.
Lagun talde osoa ideiarekin bat zetorrenez, nor bere saskitxoarekin, mendi magaleko lurra saskiratzen hasi ziren, koadernoan saskikadak zenbatzen zituzten bitartean.

Egun osoa jardun horretan eman eta hurrengo egunean saskiak betetzen zihardutela, saminez begiratu zioten elkarri
Argi ikusi zuten Haizeak eta lagunek mendi osoa saskiratzea ezinezkoa zela.
-"Hau ezinezkoa da!!"-Esan zuen Mieltxok bere betaurreko borobilak zapiarekin lehortzen zituen artean. Guztiek bat egin zuten isiltasun eta etsipen keinuekin.
Baina haratago zihardüen Aiorak (denetan txikienak) oihu egin zuen:
-"Alaaaa!! Harrizko ipuina aurkitu dut lurra palarekin kendu dudanean"
Lasterka hurbildu ziren guztiak Aioraren ondora -"Utzi ikusten!!! Utzi ikusten!!!"

Belauniko ipini eta arreta handiz garbitu zuen Haizeak armarria zirudien lurrazpiko harri gorrizta hura.
Ingurua garbi-garbi utzi eta, ikastolako mahaien neurriko harlandua agerian azaldu zitzaien.
Lodi xamarra zen armarri hark, zizelatutako hizkiak zeuzkan.

-" Garai bateko euskara izango da hau. Basajaunen sasoian gordetako altxorren bat edo " Esan zuen Haizeak.
Zenbait hitz bai, baina esanahia ez zuten ulertzen. Mieltxo, orduurako, etxera joateko eta afaltzeko gogoz zebilen eta hala bota zuen:
-"Gu txikiak garela eta armarria handia dela esan nahi du horrek."
-"Bai zera!"-Esan zioten denek irribarrez.-" Bihar ikusiko dugu zer egin"
Esan eta etxerantz abiatu ziren guztiak.

Haizeak, gauean, lokartu aurretik, mendi magaleko aurkikuntza hartaz pentsatzen jardun zuen. Mendi altzoan bizi zen Muxarro izeneko artzain zaharrari armarriaz galde ziezaioketela erabaki zuen.

Bekoak goikoa eskondu leidi
ta txikiak handia benzu, leidi
asmur ta jakiter.



Goizaldean, lagun guztiak ados jarri eta armarriko esaldia paperean idatzi zuten:

Bekoak goikoa ezkondu leidi,
ta txikiak handia benzi, leidi,
Asmuz eta jakitez.

Eta Muxarroren etxolara joan ziren.Han zegoen Muxarro adeitsua ataurreko zurezko aulkitxoan eserita.

-"Egunon Muxarro!!"- Esan zioten neska-mutilek. Aiora txikiak berehala galdetu zion zertan ari zen esku artean zeuzkan laban txiki eta adaxka haiekin.
-" Hara sasoi batean hortz ederrak nitian ardiei deitzeko, txistu egiteko baina orain, ia hortzik gabe nagoenez, lizar adaxkekin txirulak egiten ditinat. Txistu magikoa sorrarazten din lizarrak. Lizarrondoa zuhaitz berezia baita"
Artzaia egiten ari zenari arreta kendu gabe, Haizeak paperean zeukaten esaldia erakutsiz galdera luzatu zion Muxarrori.

-"Zer esan nahi du honek?"
Muxarrok, eskuartean zeuzkanak utzi eta lupa antzeko lente bakarrarekin begiratuz, honelaxe erantzun zien:
-" Ene, ene! Altxor handia aurkitu duzue. Aspalditxo gure herrialdean galdua zena. Honek esan nahi du; menpekoa, goikoaren adinakoa bilaka daitekeela eta txikiak handiari irabazi ahal diola, jakituriaz eta gogoz saiatuta"

Mieltxok, orduerako goseak jota bazkaltzera joateko irrikatan ziur aski, hala bota zion artzaiari:
-"Bai, baina beti ezin da! Adibidez ogroaren galdera ezin da asmatu. Zenbat saski behar dira mendi osoa kabitzeko?"
Muxarro pentsakor geratu zen bere zakur iletsuari bizkarra igurzten zion bitartean eta, tartetxo baten ondoren
-"Bat!" -esan zuen- " Bai, saski bat nahikoa litzateke neurri-neurrikoa izanez gero" Haizea eta lagunak liluratuta eta pentsakor itzuli ziren euren jolas-tokira.

Hurrengo egunetan, aurkitutako armarri hura lehortu eta distiratsu azaltzen hasi zen igurtziaren igurtziz
Haizeak zera esan zuen:- "Horra! Mendiari ondo begiratuta, zuhaixka eta zumez estalita ageri da ezta? Bada, saskiak adaxka eta zumar zimitzez egiten direnez, zergatik ez ditugu zuhaixkak bata besteari lotzen neguko elurteak makurrarazten dituenean bezalaxe?
Negu gorrian zuhaixka eta sastraka guztiak biluzik egoten dira hostorik gabe! Hala, saski baten modukoa litzateke, ezta?"

Herritar guztiei esan eta auzolanean halaxe egin zuten.
Elurra urtu zenean, mendi osoa saski erraldoi baten azpian zegoela zirudien.

Ikusmen ederra zen mendia katramilatutako zume, sahats eta zuhaixkaz egindako txano moduko harekin ikustea eta, horixe gozatzen ari zirela, hala esan omen zuen ostera Mieltxok:
-"Bai, ogroaren eskaera bat bete dugu, baina, eta, zuhaiztiak txistuka hastearena?"
Orduan Haizeak, irribarrea ahoan, patrikatik labaintxoa atera eta hala esan zuen:
-" Gogoan al duzue Muxarrok egin zuen txirula? Bada, goazen jolaslekuko lizardira eta ekin diezaiogun txirula magikoak egiteari!"

Egunak joan eta egunak etorri, halaxe jardun zuten. Hasieran, txirula kaskarrak egin zituzten baina, ezina ekinez egina, lizar adaxka egokiak aukeratuta, txirula mordoa egin zuten.
Zeregin horretan, katagorrien laguntza izan zuten, zuhaitzen gainaldean zeuden adaxka bikainak beraien hagin karraskariekin moztu eta lurreratzen zituzten.

Iritsi zen ogro maltzurrarekin biltzeko eguna eta han azaldu zen herritarren aurrean, betiko irribarre isekatsu harekin.
-" Zer? Aurten ere zuen babalore aurpegiak ikusi eta herrialdeko nagusitza berretsiko diat, ezta? Kar Kar "

-"Ez! Aurten zure mutur zikina azken aldiz ikusiko dugu!"- Esan zuen Haizeak jendartetik aulkitxoan igota.
-"Hona hemen zure bi baldintzak beteta. Begiratu mendirantz goizeko behe-lainoa desagertzen denean eta entzun itzazu zuhaiztiak!!"

Guztiak joan ziren zuhaiztira.
Bertan, adaska izan zirenak txirula bilakatuta, inoiz entzun den txistu doinu ozen eta alaiena jo zuten. Katagorriek ere, euren txirulatxoekin bat egin zuten saioarekin.

-"Baina, baina, ezinezkoa da!"- Zioen ogro artaburuak mendia saski erraldoi bilakatuta ikusi eta zuhaitzak txistuka entzun ondoren.
Lotsa-lotsa eginda eta herritarrak bere beldur ez zirela ikusirik, handik betirako hanka egitea besterik ez zuen izan ogroak.

Orduz geroztik, pozik eta aske bizi dira herrialde hartan.
Haizeak eta bere lagunek ez zuten baina ahaztu ondorengo egunetan, zuhaiztiei adaxkak mozterakoan eginiko zauritxoak pinu erretxin pittin batekin eta lokatzez estaltzea.
Ezta ere mendiaren saski bilakatu ziren zuhaixka katramilatuak askatu eta mendi zein zuhaizti eder haiek lehen bezain itxuroso uztea.

Egileak:



Testua:
**XABIER UGARTE BILLAR**
Centro de cumplimiento
Topas
Ctra. N-630 , km 314
37.799
Topas, Salamanca



Marrazkiak:
**KEPA ETXEBARRIA SAGARZAZU**
C.P. Zuera (Zaragoza)
Ctra. N-330, km 539
50.298
Zuera, Zaragoza

